# Urtean Zeharreko XI. astelehena
## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jainkoaren zerbitzari garala agertzen dogu.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolatik

*2 Ko* 6, 1-10

Senideok: Jainkoaren lankide garan ezkero, eskatzen deutsuegu ez dagizuela alperrik hartu haren grazia. Izan be, Jainkoak dino: «Onginahi-sasoian entzun deutsut, eta salbazino-egunean lagundu». Begira, bada: oraintxe da onginahi-sasoia, oraintxe salbazino-eguna.

Ez deutsagu inori okerrerako biderik emoten, gure zerbitzua toki txarrean gelditu ez dadin; gauza guztietan, ostera, Jainkoaren zerbitzari garala agertzen dogu, jasaten dogun guztian eroapen handia erakutsiz: atsekabe, beharrizan eta estutasunetan, zigor, kartzela, nahaste eta nekeetan, lo faltan eta janari-ezean. Biziera garbiz jokatzen dogu, jakituriaz, pazientziaz eta bihotz gozoz, Espiritu Santuaren dohaiz eta benetako maitasunez, egiaren mezua iragarriz eta Jainkoaren indarra

erakutsiz.
Erasorako nahiz defentsarako, Jainkoaren salbazino-indarra da gure arma, ohoratzen gaituela nahiz iraintzen, gutaz ondo berba egiten dabela nahiz txarto. Guzurtitzat jotzen gaitue, baina egiazale gara; ezezaguntzat, baina ezagunak gara; hilzorian gagoz, baina oraindino bizirik; zigortuak, baina ez hilak; tristetzat jotzen gaitue, baina beti pozik gagoz; behartsutzat, baina beste asko aberasten dogu; ezertxu be ez bagendu lez, baina guztiaren jaube gara.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 98 [97], 1. 2-3b. 3c-4 (R/. 2a)

R/. **Bere garaipena ezagutuazo dau Jaunak.**

V/. Kanta Jaunari kantu barria,
egintza harrigarriak egin ditu-eta;
garaipena emon deutso bere eskumak,
bere beso santuak. R/.

V/. Bere garaipena ezagutuazo dau Jaunak,
bere salbazino-egintza agertu nazinoen aurrean.
Ez da ahaztu bere maitasunaz,

Israel herriari deutson leialtasunaz. R/.
V/. Munduko bazter guztiek ikusi dabe
gure Jainkoaren garaipena.
Egin irrintzi Jaunari, lur osoa,
egin poz-oihu eta kantu, jo soinua. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Nabot harrikatu egin eben hil arte.*

Erregeak lehenengo liburutik

*1 Erg* 21, 1-16

Sasoi haretan, baeban Nabot izreeldarrak mahasti bat Izreelen, Samariako errege Akaben jauregi ondoan. Honan berba egin eutson Akabek Naboti: «Emoidazu zeure mahastia, neuretzat baratzea egiteko, nire etxearen ondo-ondoan dago-eta; ordainetan mahasti hobea emongo deutsut; edota, nahiago badozu, dirutan ordainduko deutsut». Nabotek erantzun eutson Akabi: «Ez deidala Jaunak itzi asabengandiko ondarea zuri emoten».

Triste eta hasarre joan zan Akab etxera, Nabot izreeldarrak bere asabengandiko ondarea ez eutsola emongo erantzun eutsolako. Ohean etzun zan, aurpegia horma aldera

bihurturik, eta ez eban jan nahi izan.

Jezabel emaztea etorri jakon, esanez: «Zer dozu triste egoteko? Zergaitik ez dozu jan nahi?» Erregeak erantzun eutson: «Nabot izreeldarrari esan deutsat bere mahastia diru-ordain niri saltzeko edo, nahiago baeban, beste mahasti bat emongo neutsala berearen ordez. Baina ez deustala itziko erantzun deust». Orduan, Jezabel emazteak esan eutson: «Ez ete zara, bada, zu Israelgo erregea? Jagi zaitez, jan eta poztu barru hori. Neuk emongo deutsut Izreelgo Naboten mahastia».

Jezabelek gutunak idatzi ebazan Akaben izenean, erregearen zigiluz jo eta Naboten uri berean bizi ziran herri-arduradunei eta handikiei bialdu eutsezan. Gutunek hau inoen: «Iragarri egizue baraualdia eta jesarriazo Nabot herriko batzarraren aurrean; ipini gizon gaizto bi Naboten aurrean eta salatu dagiela testigantza hau eginez: "Jainkoa eta erregea madarikatu dozuz". Gero, atara egizue Nabot eta emoiozue harrika hil arte».

Naboten uriko arduradunek eta handikiek bete eben Jezabelek

bialdutako gutunetan idatzi eutsen agindua. Baraualdia iragarri ostean, Nabot batzarraren aurrean jesarriazo eben. Gero, gizon gaizto biak etorri, Naboten aurrean jesarri eta salatu egin eben, jentearen aurrean, testigantza hau eginez: «Nabotek Jainkoa eta erregea madarikatu ditu». Uritik kanpora eroan eta harrikatu egin eben hil arte.

Orduan, abisua bialdu eutsoen Jezabeli: «Nabot harrikatu dabe eta hil da». Nabot harrikatu eta hil ebela jakitean, Jezabelek esan eutson Akabi: «Jagi eta egin zaitez Nabot izreeldarrak saldu nahi ez eutsun mahastiaren jaube. Nabot ez da bizi, hil da». Izreelgo Nabot hil zala jakin ebanean, haren mahastira jatsi zan behingoan Akab, mahastiaren jaube egiteko.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 5, 2-3. 5-6a. 6b-7 (R/. 2b)

R/. **Egin jaramon, Jauna, nire aieneari.**

V/. Entzun, Jauna, nire hitzok,
egin jaramon nire aieneari.
Zagoz adi nire deadarrera,

ene Errege, ene Jainko,
Zuri nabil-eta otoitzean. R/.

V/. Ez zara Zu gaiztakeria gogoko dauan Jainkoa,
ez deutsazu Zuk gaiztoari harrerarik egiten,
harroek ezin iraun dabe zure begien aurrean. R/.

V/. Gaizkile guztiak dozuz gorrotatzen,
guzur-ontziak hondatzen.
Hiltzaile eta maltzurrak
higuingarri jatzuz, Jauna. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Sal* 119 [118], 105

R/. **Aleluia.**

V/. Kriseilu da zure hitza, Jauna, nire oinentzako,
argi nire biderako. R/.

## EBANJELIOA

*Nik hau dinotsuet: Gaizkileari ez erantzun txarto.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 5, 38-42

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Entzun dozue antxinakoei

agindua: "Begia begiaren orde, hagina haginaren orde". Nik, ostera, hauxe dinotsuet: Gaizkileari ez erantzun txarto; bestera baino, eskumako matrailean jotzen zaituanari eskeini beste matraila be; soinekoa kentzeko auzitara eroan gura zaituanari emon soingainekoa be; nonork mila pausu egitera behartzen bazaitu, egin bi mila beragaz. Eskatzen deutsunari emon, eta dirua izteko eskatzen deutsunari ez ukatu.

Jaunak esana.

_____________________________________________2

# Urtean Zeharreko XI. martitzena

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jesu Kristo behartsu egin zan zuekaitik.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolatik

*2 Ko* 8, 1-9

Senideok: Jainkoak Mazedoniako eleiz alkarteei izan deutsen onginahia jakinazo nahi deutsuegu. Atsekabealdi gogorretan probatuak izan diran arren, hareen poza neurribakoa izan da, eta euren ezerez gorrian oso eskuzabal

agertu dira. Ahal ebena eta gehiago be emon dabela testigu naz; euren gogoz, arren eta arren eskatzen euskuen fededunen aldeko zerbitzu honetan parte hartzen izteko.

Eta guk uste baino gehiago be egin dabe: lehenengo, Jaunari emon eutsoen euren burua, eta gero guri, Jainkoak nahi eban lez. Horregaitik eskatu deutsagu Titori, zuen eskuzabaltasunezko egintza hau berak hasi eban lez, burutu be berak burutu dagiala zuen artean.

Gauza guztietan aberats zarie: sinismenean, berba egiteko gaitasunean, jakintzan, danerako arduran eta guganako maitasunean; izan zaiteze aberats eskuzabaltasunean be. Hau ez deutsuet aginduz esaten, beste eleiz alkarteen arreta ikusiz baino, zeuen maitasunaren jatortasuna erakusteko aukera izan dagizuen. Ezaguna dozue Jesu Kristo gure Jaunaren eskuzabaltasuna: aberats izanik, behartsu egin zan zuekaitik, bere behartsu izateaz zuek aberats egiteko.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 146 [145], 2. 5-6b. 6c-7. 8-9a (R/. ik. 1b)

R/. **Goratu egizu Jauna, nire barrua.**
Edo: **Aleluia**.

V/. Goratuko dot Jauna bizi nazan artean,
soinua joko deutsat neure Jainkoari nazan artean. R/.

V/. Zorionekoa Jakoben Jainkoa lagun dauana,
Jauna bere Jainkoa itxaropen dauana.
Berak egin ditu zeru-lurrak eta itsasoa,
eta horreetan dagoan guztia. R/.

V/. Betiko eusten deutso bere leialtasunari,
zapalduen eskubideak defendatzen ditu,
gose diranei ogia emoten.
Jaunak askatzen ditu presoak. R/.

V/. Jaunak zabaltzen itsuen begiak,
Jaunak jasotzen konkortuak,
Jaunak maitatzen zintzoak,
Jaunak zaintzen etorkinak. R/.

# II. urtean

## I. IRAKURGAIA

*Israel pekatura eroan dozu.*

Erregeak lehenengo liburutik

*1 Erg* 21, 17-29

Nabot hil ondoren, Jaunak honan

berba egin eutson Elias tixbearrari: «Joan zaitez Samarian dagoan Israelgo errege Akabengana; Naboten mahastian dago, haren jaube egitera joana. Berba egiozu honan: "Hau dino Jaunak: Gizon bat hil eta, gainera, harenaz jaubetu!" Hara, bada, zer dinotsun Jaunak: "Txakurrek Naboten odola milikatu daben toki berean milikatuko dabe zure odola be"». Akabek esan eutson Eliasi: «Orain be harrapatu nozu, nire arerio horrek».

Eliasek erantzun: «Bai, harrapatu zaitut! Zeure burua saldu dozulako, Jaunari atsegin ez jakona eginez, hau dino Jaunak: "Zoritxarra ekarriko dot zure gainera; zure ondorengoak desagertuazoko ditut eta zure familiako gizaseme guztiak, libre nahiz esklabo, hondatuko Israelen. Nebaten seme Jeroboamen eta Ahiasen seme Baxaren familiekin egin nebana bera egingo dot zure familiagaz be, hasarratuazo nozulako eta Israel pekatura eroan dozulako". Jezabeli buruz, barriz, hau dino Jaunak: "Txakurrek iruntsiko dabe Jezabel Izreelgo landan. Urian hiltzen dan Akaben familiakoa txakurrek jango

dabe, eta landan hiltzen dana zeruko hegaztiek"».

Benetan ez zan inor izan Akabek lez bere burua saldu ebanik, Jaunari atsegin ez jakona egiteko; Jezabel bere emazteak eragin eutson okerrera. Jokabide higuingarria izan eban, sasijainkoen atzetik ibiliz, Jaunak israeldarren aurretik bota ebazan amortarrek egin eben lez.

Eliasen hitzak entzutean, Akabek bere jantziak urratu ebazan, dolu-jantzia hartu eta barau egin eban; dolu-jantzia erantzi barik egin eban lo, eta buru-apal ebilen. Orduan, honan berba egin eutson Jaunak Elias tixbearrari: «Ikusi dozu zelan apaldu dan Akab nire aurrean? Hara, nire aurrean apaldu dan ezkero, zoritxarra ez deutsat bera bizi dan artean ekarriko; semearen egunetan ekarriko deutsat zoritxarra haren familiari».

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 51 [50], 3-4. 5-6b. 11 eta 16 (R/. ik. 3a)

R/. **Erruki, Jauna, pekatu egin dogu-eta.**

V/. Erruki nitaz, ene Jainko, zeure maitasunaz,
hondatu nire hobena zeure neurribako onberatasunaz.
Garbitu nagizu zeharo neure errutik,
garbitu neure pekatutik.
V/. Autortzen dot, bai, neure hobena,
begi aurrean dot eten barik neure pekatua.
Zure aurka, zure aurka bakarrik, egin dot pekatu,
zure begietan oker dana egin dot. R/.
V/. Aldendu aurpegi hori nire pekatutik,
hondatu nire erru guztiak.
Libratu nagizu heriotza-zigorretik, Jainko,
ene Jainko salbatzailea,
eta poz-oihuz ospatuko dau nire mihinak zure salbazinoa. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Jn* 13, 34

R/. **Aleluia.**
V/. Agindu barria emoten deutsuet, dino Jaunak:
maitatu dagizuela alkar,
Nik maite izan zaituedan lez. R/.

## EBANJELIOA

*Maitatu egizuez zeuen arerioak.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 5, 43-48

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Entzun dozue antxinakoei agindua: "Maitatu egizu zeure lagun hurkoa eta gorrotatu zeure arerioa”. Nik, ostera, hauxe dinotsuet: Maitatu egizuez zeuen arerioak eta egin otoitz eraso egiten deutsueenen alde, zeruetan dagoan zeuen Aitaren seme-alaba izan zaitezen ze, harek gaiztoentzat eta zintzoentzat ataratzen dau eguzkia eta zuzenentzat eta okerrentzat egiten euria. Izan be, maite zaituenak bakarrik maite badituzue, zer sari zor jatzue? Zergalariek be ez ete dabe beste horrenbeste egiten? Eta zeuon senideak bakarrik agurtzen badituzue, zer egiten dozue berezirik? Jentilek be ez ete dabe beste horrenbeste egiten? Izan zaiteze, beraz, guztiz onak, zeruko zuen Aita guztiz ona dan lez».

Jaunak esana.

# Urtean Zeharreko XI. eguaztena
## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Alai emoten dauana maite dau Jainkoak.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolatik

*2 Ko* 9, 6-11

Senideok: Izan kontuan urri ereiten dauanak urri batzen dauala, eta oparo ereiten dauanak batu be oparo batzen dauala. Emon begi bakotxak bere kontzientzian erabagi dauana, baina ez gogo txarrez eta behartuta lez, alai emoten dauana maite dau-eta Jainkoak.

Eta ahaltsua da Jainkoa era guztietako dohaiez zuek betetzeko, zeuentzat danetik nahikoa izanik, egintza on guztietarako ugari izan dagizuen, Liburu Santuak dinoan lez:

«Esku betean emoten deutse behartsuei,
haren eskuzabaltasunak betiko dirau».

Ereiteko hazia eta jateko ogia emoten dituan Jainkoak emongo deutsue hazia,

ugarituko dau zuek ereindakoa eta oparo gehituko ditu zuen eskuzabaltasunaren emoitzak.

Danetan aberats zarie, danetan eskuzabal izateko; holan, gure bitartez, zuen eskuzabaltasunak Jainkoarentzat esker ona sortuko dau.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 112 [111], 1-2. 3-4. 9 (R/. 1a)

R/. **Zorionekoa Jaunari begirune deutsana.**

Edo: **Aleluia.**

V/. Zorionekoa Jaunari begirune deutsana,
haren aginduak biziro maite dituana.
Ahaltsua izango da lurraldean haren jatorria,
bedeinkatua zuzenen ondorea. R/.

V/. Haren etxean ondasunak ugari izango dira,
haren eskuzabaltasunak betiko dirau.
Ilunpean argia lez da zuzenentzat:
errukiorra, bihozbera eta zintzoa. R/.

V/. Esku betean emoten deutse behartsuei,
haren eskuzabaltasunak betiko dirau,
ohorez jasoko dau bekokia. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Suzko gurdi batek banandu egin ebazan bata besteagandik,*
*eta Eliasek zerura igon eban.*

Erregeak bigarren liburutik

*2 Erg* 2, 1. 6-14

Jaunak haize-zurrunbiloan eroan eban Elias zerura. Hona zelan jazo zan. Elias eta Eliseo Gilgaldik abiatu ziran, eta, Jerikora heldu ziranean, Eliasek esan eutson Eliseori: «Gelditu hemen; Jaunak Jordan ibaira bialtzen nau ni». Baina Eliseok erantzun: «Ala Jainkoa, eta ala zu! Ez zaitut bakarrik itziko». Eta alkarregaz joan ziran biak. Profeta-taldeko berrogeta hamar lagun be joan ziran eta urruntxuago gelditu ziran Jordanen aurrez aurre; Elias eta Eliseo, barriz, Jordan bazterrean gelditu ziran.

Orduan, Eliasek bere soingainekoa hartu, batu eta ura jo eban haregaz: urak alde bietara baztertu ziran, eta biak lehorretik igaro ziran. Bestaldera heldu ziranean, Eliasek esan eutson Eliseori: «Esaidazu zer nahi dozun nik zure alde egitea, Jaunak zure ondotik eroan nagian baino lehen». Eliseok erantzun eutson: «Pasatu dadila nigana

zure profeta-espirituaren hirutik bi». Eliasek barriro: «Gauza zaila eskatzen dozu. Halan be, Jaunak zure ondotik eroango nauanean ikusten banozu, izango dozu; bestela, ez».

Biak bidean aurrera berbetan joiazala, suzko zaldiek eroien suzko gurdi batek banandu egin ebazan bata besteagandik, eta Eliasek zerura igon eban haize-zurrunbiloan. Eliseok ikusten eban eta oihu egiten: «Ene aita, ene aita, Israelen zaintzaile indartsua!» Gero, ez eban gehiago ikusi.

Orduan, Eliseok bere jantziak hartu eta zati bi egin ebazan. Gero, Eliasi soinetik jausi jakon soingainekoa jaso, Jordanera bihurtu eta ibai ondoan gelditu zan. Ondoren, Eliasi jausitako soingainekoa hartu eta urak jo ebazan haregaz, esanez: «Non da orain Jauna, Eliasen Jainkoa?» Jo ebazan urak, eta alde bietara baztertu ziran, eta bera bestaldera igaro zan.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 31 [30], 20. 21. 24 (R/. 25)

R/. **Izan bihotz, Jaunagan itxaroten**

**dozuen guztiok!**
V/. Bai handia, Jauna, zure ontasuna!
Begirune deutsuenentzat dozu gordea,
Zugan babesten diranei agertzen deutsezu
jentearen aurrean. R/.
V/. Zeure aurpegiaren babespean gordetzen dozuz
jentearen azpikerietatik;
zeure txabolan babesten dozuz
mihinen liskarretatik. R/.
V/. Maitatu egizue Jauna, haren fededun guztiok.
Jaunak zaintzen ditu leial jakozanak;
harroei, barriz, ordain gogorra emoten deutse.
Eutsi gogor, izan bihotz,
Jaunagan itxaroten dozuen guztiok! R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Jn* 14, 23

R/. **Aleluia.**
V/. Ni maite nauanak gordeko dau nire hitza, dino Jaunak;
nire Aitak maite izango dau,
eta Aita eta biok harengana etorriko gara. R/.

## EBANJELIOA

*Ezkutuan be ikusten dauan zeure Aitak emongo deutsu ordaina.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 6, 1-6. 16-18

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Begira, gero: ez egin zeuen egintza onak jentaurrean, ikusi zagiezan! Osterantzean, ez dozue zeruetan dagoan Aitaren saririk izango.

Limosna emotean, beraz, ez ibili aurretik turuta jotzen, itxurazaleak sinagogetan eta kaleetan ibiltzen diran lez, jenteak txalotu dagizan. Egia esan, horreek jaso dabe euren saria. Zuk limosna emotean, ostera, ez begi jakin zure ezkerrak zer egiten dauan eskumak; holan, zure limosna ezkutuan geldituko da; eta ezkutuan be ikusten dauan zeure Aitak emongo deutsu saria.

«Otoitz egitean, ez egin itxurazaleen erara; ze horreek sinagogetan eta plaza-ertzetan zutunik otoitz egitea maite dabe, jenteak ikusi dagizan. Egia esan, horreek jaso dabe euren saria. Zu, ostera, otoitz egitean, sartu zaitez zeure

gelan, itxi atea eta egiozu otoitz ezkutuan dagoan zeure Aitari; eta ezkutuan be ikusten dauan zeure Aitak emongo deutsu saria.

Barau egitean, ez agertu bekokilun, itxurazaleak lez; ze aurpegia zatartu egiten dabe, barau egiten dabela jenteari agertzeko. Egia esan, horreek jaso dabe euren saria. Zuk, barriz, barau egitean, igurtzi zeure burua usain gozoz eta garbitu aurpegia, jenteak ez, baina ezkutuan dagoan zure Aitak ikusi dagian zure baraua; eta ezkutuan be ikusten dauan zeure Aitak emongo deutsu ordainsaria».

Jaunak esana.

4

# Urtean Zeharreko XI. eguena

## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Jainkoaren Barri Ona doan iragarri neutsuen.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolatik

*2 Ko* 11, 1-11

Senideok: Parkatuko deustazuez zorakeria batzuk! Jakina parkatzen deustazuezana; Jainkoak bere

herriagaitik sentitzen eban zeloaz nago-eta ni zuekaitik jeloskor; izan be, senar bakarrari, Kristori, zaukedaz aginduta, eta neskatila garbi lez aurkeztu nahi zaituet beraren aurrean. Baina bildur naz, sugeak bere maltzurkeriaz Eva liluratu eban lez, zuen gogoak be ez ete diran gaiztotuko, Kristoganako jarrera leial eta garbitik aldenduz.

Izan be, etortzen jatzue edozein, guk predikatu geuntsuena ez beste Jesus bat predikatuz edota hartu zenduena ez beste Espiritu bat eskeiniz edota sinistu zenduena ez beste Barri On bat iragarriz, eta zuek nasai-nasai onartzen dozue. Halan be, uste dot ez nazala ezertan superapostolu horreek baino gitxiago. Berbetan motela banaz be, ez horregaitik jakintzan, beti eta era guztietara agertu deutsuedan lez.

Edota txarto egin ete neban zuek goratzeagaitik neure burua beheratzean? Jainkoaren Barri Ona doan iragarri neutsuelako dinot. Zuek zerbidu ahal izateko, beste eleiz alkarteei kendu behar izan deutset neuretzat behar nebana. Eta zuen artean nengoala beharrizanean izan

nintzanean, ez nintzan zuetako inorentzat nekagarri izan, Mazedoniatik etorritako senideek emon eusten-eta behar nebana. Nire jokaera hauxe izan zan eta hauxe izango be: ezertan nekagarri ez izatea zuentzat.

Nigan bizi dan Kristoren egiagaitik dinotsuet, harrobide hori inork be ez deustala kenduko Akaia osoan. Zergaitik jokatu dot holan? Maite ez zaituedalako ete? Ondo daki Jainkoak zenbat maite zaituedan.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 111 [110], 1-2. 3-4. 7-8 (R/. ik. 7a)

R/. **Zure egintzak, Jauna, leial eta zintzo dira.**

Edo: **Aleluia.**

V/. Bihotz-bihotzez emoten deutsadaz eskerrak Jaunari,
zintzoekin batera batzarrean alkarturik.
Jaunak eginak handi dira,
gogoko dabezan guztientzat aztergai. R/.

V/. Ospetsu eta eder haren egintza,
betiko dirau haren salbazino-asmoak.
Bere merariak gogoangarri egin ditu;

errukiorra da Jauna eta bihozbera. R/.
V/. Haren egintzak leial eta zintzo dira,
haren lege guztiak fidagarri,
beti-betiko ezarriak,
leial eta zuzen eratuak. R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Elias zurrunbiloan desagertu zanean,*
*haren espirituaz bete zan Eliseo.*

Siraken liburutik

*Si* 48, 1-15 (gr. 1-14)

Sua lez agertu zan Elias profeta,
haren hitzak zuziak lez erretzen eban.
Gosetea ekarri eban israeldarren gainera,
gitxitu egin ebazan bere jainkozaletasun gartsuaz.
Jaunaren aginduz euria egitea galarazo eban,
eta hiru aldiz jatsiarazo sua zerutik.
Bai ospetsua izan zinala, Elias, zeure mirariakaitik!
Nor harrotu, zu adinakoa dalakoan?

Zuk ekarri zenduan hildako bat bizira,
Goi-goikoaren hitzez Hildakoen Egoitzatik ataraz;

zuk eragin zenduan erregeen hondamendia
eta bota zenduzan agintetik handikiak;
zuri egin eutsun Jaunak errieta Sinai mendian,
eta zigortzeko bere erabagiak azaldu;
zuk igurtzi zenduzan erregeak,
sinisbakoen aurka mendekatzeko,
eta profetak igurtzi zenduzan zure ondorengo izateko.

Suzko zurrunbiloan eroan zinduezan zerurantz,
suzko zaldiek eroien gurdian.
Idatzirik dago, egun baten etortzekoa zarala,
Jaunaren sumina baretzera, lehertu baino lehen,
gurasoak eta seme-alabak adiskidetzera,
eta Jakoben leinuak barriztatzera.
Zorionekoak zu ikusi zinduezanak
eta maitasunean lokartu ziranak!
Gu be biziko gara, bai.

Elias zurrunbiloan desagertu zanean,
haren espirituaz bete zan Eliseo.
Bere bizitzan ez eben buruzagiek Elias

ikaratu,
inork be ez menpean hartu.
Ezer ez zan harentzat ezinezko,
heriotzako loaldian be profetagintzan jardun eban.
Bizi zala, mirariak egin ebazan;
hil ondoren be, harrigarriak izan ziran haren egintzak.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 97 [96], 1-2. 3-4. 5-6. 7 (R/. 12a)

R/. **Poztu zaiteze Jaunarekin, zintzook.**

V/. Errege da Jauna! Alaitu bedi lurra,
poztu beitez ugarte ugariak!
Laino eta hodei baltzak ditu inguruan,
justizia eta zuzenbidea tronuaren oinarri. R/.

V/. Sua doakio aurretik,
inguruko arerioak kiskalduz.
Haren tximistek argitzen dabe mundua;
ikustean, dar-dar egiten dau lurrak. R/.

V/. Mendiak argizaria lez urtzen dira Jaunaren aurrean,
lur osoaren Jaubearen aurrean.
Zeruek haren salbazino-egintza iragartzen dabe,
herri guztiek haren ospea ikusten. R/.

V/. Lotsatu egiten dira idolozale guztiak,
sasijainkoez harrotzen diranak.
Ahuspez jartzen jakoz jainko guztiak. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*Erm* 8, 15bc

R/. **Aleluia.**

V/. Seme-alaba egiten zaituen Espiritua hartu dozue,
eta Espirituaren bidez «Abba!», hau da, «Aita!»,
deiegiten deutsagu Jainkoari. R/.

**EBANJELIOA**

*Zuek honan egingo dozue otoitz.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 6, 7-15

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Otoitz egitean, ez jardun esan eta esan, jentilak bezala, ze uste dabe euren berba-jarioari esker entzungo deutsela Jainkoak. Ez izan hareen antzeko, ze badaki zuen Aitak zer behar dozuen, zuek eske hasi baino lehenago. Beraz, zuek honan egingo dozue otoitz:

“Gure Aita, zeruetan zarana,
Santu izan bedi zure izena;
Etor bedi zure erreinua;
Egin bedi zure nahia
Zeruan bezala lurrean ere.
Emoiguzu gaur egun honetako ogia;
Parkatu gure zorrak,
Geuk ere geure zordunei
Parkatzen deutsegun ezkero;
Ez eiguzu itzi tentazinoan jausten
Eta atara gagizuz gatxetik”.

Izan be, zuek besteei euren hutsegiteak parkatzen badeutsezuez, zeuoi be parkatuko deutsue zeruko zuen Aitak; baina besteei parkatzen ez badeutsezue, zeuoi be ez deutsuez parkatuko Aitak zeuen hutsegiteak».

Jaunak esana.

_______________________________________5

# Urtean Zeharreko XI. barikua

## I. urtean

### I. Irakurgaia

*Horreen guztien gainetik, eguneroko nire buruhaustea:*

*eleiz alkarte guztien ardura.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolatik

*2 Ko* 11, 18. 21b-30

Senideok: Asko dira giza arrazoi hutsez harrotzen diranak; zergaitik ez ni? Besteak ausartzen diranera –badakit zoro lez nabilena– neu be ausartuko naz.

Hebrearrak dirala? Bai neu be. Israeldarrak dirala? Bai neu be. Abrahamen jatorrikoak dirala? Bai neu be. Kristoren zerbitzariak dirala? Ni gehiago, nahiz zorokeria izan hori esatea. Hareek baino neke gehiago jasan dot, kartzela gehiago, zigorkadak zer esanik ez; hilzorian be egon naz hamaika aldiz.

Judeguen eskuetatik bost aldiz hogeta hemeretzi zigorradak hartutakoa naz; hiru aldiz makilatutakoa, behin harrikatutakoa, hiru aldiz hondoratu zan neroan itsasontzia eta gau eta egun osoa emon neban itsasoan galduta. Zenbat ibilaldi oinez eta zenbat arrisku! Arriskuak ibaietan, arriskuak bidelapurren aldetik, arriskuak neure herrikoen aldetik, arriskuak jentilen

aldetik, arriskuak urietan, arriskuak basamortuan, arriskuak itsasoan, arriskuak guzurrezko senideen artean. Zenbat neke eta lan! Gau asko lorik egin barik; gose eta egarri; sarritan ezer jan barik, hotzak eta jantzi barik.

Eta horreen guztien gainetik, eguneroko nire buruhaustea: eleiz alkarte guztien ardura. Nor gaixotzen da, eta ni gaixotu ez? Nor jausten, eta ni erremindu ez? Harrotu behar badot, neure makaltasunaz harrotuko naz.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 34 [33], 2-3. 4-5. 6-7 (R/. ik. 18b)

R/. **Bildur guztietatik atara ninduan Jaunak.**

V/. Bedeinkatuko dot aldi guztietan Jauna,
nire ahoan beti haren gorespena.
Harro nago Jaunagaz,
entzun begie apalek eta poztu beitez. R/.

V/. Handietsi nigaz batera Jauna,
goratu daigun alkarregaz haren izena.
Jaunagana jo neban, eta harek erantzun,
bildur guztietatik ninduan libratu. R/.

V/. Begiratzen deutsoenak distiratsu egongo dira,
ez jake aurpegia lotsaz gorrituko.
Dohakabeak dei egin eban, eta Jaunak entzun,
eta estualdi guztietatik eban salbatu. R/.

## II. urtean

### I. Irakurgaia

*Joax igurtzi eban,*
*ete danek oihu egin eben: «Gora erregea!».*

Erregeak bigarren liburutik

*2 Erg* 11, 1-4. 9-18. 20

Egun hareetan, Okoziasen ama Ataliak, bere semea hil zala ikusirik, erregearen familiako guztiak hiltzea erabagi eban. Baina Judako errege izan zan Joramen alaba eta Okoziasen arreba Joxebak Joax Okoziasen semea hartu, hil behar ebezan errege-senitartekoen artetik atara eta tenpluko gela baten sartu eban, bere inudeagaz batera. Holan gorde eban Ataliaren begi-bistatik, eta ez eben hil. Sei urtez egon ziran inudea eta biak Jaunaren etxean ezkutaturik; bitartean, Atalia zan erregina lurralde haretan.

Zazpigarren urtean, Joiada abadeak Jaunaren tenplura etorriazo ebazan kariarren eta guardien ofizialak. Hareekin hitzarmena egin eta zin eginazo eutsen Jaunaren etxean. Ondoren, erregearen semea aurkeztu eutsen.

Ofizialek zehatz bete eben Joiada abadeak agindu eutsen guztia. Hartu ebazan bakotxak bere gizonak –zapatuan zaintzaldia hasten eta amaitzen ebenak–, eta Joiada abadeagana etorri ziran. Orduan David erregearen lantzak eta babeskiak emon eutsezan abadeak ofizialei, arma horreek tenpluan egozan-eta jasoak. Guardiak, armak eskuetan, hegotik iparrerra jarri ziran, altarearen eta tenpluaren artean, erregea inguratzeko. Orduan, Joiadak erregearen semea erdira ekarri, koroa eta errege-ezaugarriak ezarri eta errege igurtzi eban. Jente guztiak, txaloka, oihu egin eban: «Gora erregea!».

Guardien eta jentearen zarata-hotsa entzun ebanean, Ataliak Jaunaren tenplura jo eban, eta erregea ikusi eban oholtza gainean zutunik, ohi zan lez;

buruzagiak eta turuta-jotzaileak erregearen ondoan egozan, eta herriko jentea pozez beterik ebilen, turuten soinura. Orduan, Ataliak, bere jantziak urratuz, garrasi egin eban: «Saldukeria, saldukeria!» Joiada abadeak, ez eban Atalia Jaunaren etxean hiltzea nahi, eta guardien buru ziran ofizialei hau agindu eutsen: «Atara egizue tenplutik eta, norbaitek jarraitzen badeutso, hil ezpataz». Heldu eutsoen eta bultzaka jauregira sartu eben Zaldien Atetik eta han hil eben.

Gero, Joiadak ituna egin eban Jaunaren, erregearen eta herriaren artean, herria benetan Jaunaren herri izan zedin. Ituna egin eban erregearen eta herriaren artean be. Ondoren, herriak Baalen jauretxean sartu eta hondatu egin eban; birrindu egin ebazan hango altara eta irudiak eta Matan, Baalen abadea, altara aurrean hil eben. Joiada abadeak zaintzaileak ipini ebazan Jaunaren etxean.

Herri osoa pozez bete zan eta uria baketu. Atalia, barriz, ezpataz hil eben errege-jauregian.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 132 [131], 11. 12. 13-14. 17-18 (R/. 13)

R/. **Jaunak Sion aukeratu dau bere bizileku.**

V/. Jaunak zin egin deutso Davidi,
inoiz hausiko ez dauan hitza emon:
«Zure jatorriko bat
ipiniko dot zure tronuan. R/.

V/. Zure ondorengoek,
nire ituna eta irakatsiko deutsedazan aginduak
gordetzen badabez,
betiko jesarriko dira zure tronuan». R/.

V/. Bai, Jaunak Sion aukeratu dau
eta han bizi nahi izan dau:
«Hau da nire atsedenlekua betiko,
hemen biziko naz, gogoko dot-eta. R/.

V/. Han erneazoko dot Daviden indarra,
kriseilua biztuko deutsat Nik igurtzitako erregeari.
Haren arerioak lotsaz ditut estalduko;
haren buruan, barriz, koroak dir-dir egingo». R/.

## I. eta II. urteetan

## Aleluia

*Mt* 5, 3

R/. **Aleluia.**
V/. Zorionekoak gogoz behartsu diranak, eurena dabe-eta Jainkoaren erreinua. R/.

## EBANJELIOA

*Zure aberastasuna non, zure bihotza han.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt* 6, 19-23

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Ez pilatu mundu honetan zeuen ondasunak, ze sitsak eta ugerrak jaten ditue hemen, eta lapurrek zuloak egin eta harrapatzen. Pilatu zeruan zeuen ondasunak, ze han ez ditu sitsak, ez ugerrak jaten, ezta lapurrek zuloak egin eta harrapatzen be. Ze, zure aberastasuna non, zure bihotza han.

Begia da gorputzari argi egiten deutson kriseilua. Begia onik badozu, zure gorputz osoa argitan ibiliko da. Baina begia gaixorik badozu, zure gorputz osoa be ilunpetan ibiliko da. Beraz, zeure barruan argi izan behar leukena iluna bada, a zer ilunpea zurea!»

Jaunak esana.

## Urtean Zeharreko XI. zapatua
## I. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Pozik harrotuko naz neure makaltasunaz.*

San Paulo Apostoluak Korintoarrei egindako bigarren epistolatik

*2 Ko* 12, 1-10

Senideok: Harrotu behar badot –ezertarako ez bada be–, Jaunagandiko ikuskari eta agerpenetara joko dot. Ezagutzen dot nik kristau bat, orain hamalau urte hirugarren zeruraino eroan ebena –gorputzagaz ala gorputzik barik ete zan ez dakit, Jainkoak daki–. Badakit gizon hori paradisura eroan ebela –gorputzagaz ala gorputzik barik ez dakit, Jainkoak daki–, eta gizakiak ezin esan leikezan berbak entzun ebazala han.

Halako gizonaz harrotuko naz ni; ez, ostera, neure buruaz, neure makaltasunaz baino. Harrotuko banintz, ez litzateke burubakokeria izango, egia hutsa esango neuke-eta; baina bego horretan, nigan ikusiak edota niri entzunak adierazoten dauana baino

handiagotzat inork hartu ez nagian, aparteko goi-agerpenak izan ditudala-eta.

Horreek dirala-eta neure burua dan baino handiagotzat jo ez dagidan, haragian sartuta daukadan eztena emon jat, jo eta jo dabilkidan Satanasen ordezkaria, harrotu ez nadin. Hiru aldiz eskatu deutsat Jaunari, kendu deidala, baina harek esan deust: «Nahikoa dozu nire laguntza, nire indarra makalaldian gauzatzen da-eta bete-betean».

Pozik harrotuko naz, beraz, neure makaltasunaz, Kristoren indarra bizi dadin nigan. Pozik nabil, beraz, Kristogaitik jasaten ditudan makalaldia, irain, beharrizan, erasoaldi eta estualdietan. Makal nazanean, orduan naz-eta indartsu.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 34 [33], 8-9. 10-11. 12-13 (R/. 9a)

R/. **Dastatu egizue eta ikusi zein ona dan Jauna.**

V/. Kanpaturik dago Jaunaren aingerua
hari begirune deutsoenen inguruan,
eta libratzen ditu.

Dastatu egizue eta ikusi zein ona dan Jauna;
zorionekoa harengan babesten dana. R/.

V/. Izan Jaunari begirune zuek, hari sagaratuok,
ez jake-eta ezer falta begirune deutsoenei.
Aberatsek ezagutzen dabe beharrizana eta gosea;
Jaunagana jotzen dabenei ez jake onik falta. R/.

V/. Zatoze, seme-alabok, eta entzun;
Jaunari begirune izaten irakatsiko deutsuet.
Nork ez dau bizia maite?
Nork ez dau luzaro bizi nahi, zoriontsu izateko? R/.

## II. urtean

### I. IRAKURGAIA

*Zakarias tenplutik altarara bitartean hil zenduen.*

Kronikak bigarren liburutik

*2 Kro* 24, 17-25

Joiada abadea hil zanean, Joax erregeari agur egitera etorri ziran Judako buruzagiak, eta erregeak jaramon egin eutsen hareen aholkuei. Jaunaren, euren asaben Jainkoaren,

tenplua itzi eta idoloei kultu emoten hasi ziran. Halako pekatuak Jainkoaren hasarrea biztu eban Judaren eta Jerusalemen kontra. Profetak bialdu eutsezan, beragana bihurtuazoteko. Profetek oharpenak egin eutsiezan, baina ez eutsien jaramonik egin.

Zakarias, Joiada abadearen semea, Jainkoaren espirituak hartuta, herriaren aurrean aurkeztu zan eta esan eutson: «Hau dino Jainkoak: "Zergaitik hausten dozuez Jaunaren aginduak? Txarto amaitu behar dozue. Jauna baztertu dozuelako, Jaunak be baztertu egiten zaitue"».

Hareek Zakariasen kontra jagi ziran eta, erregearen aginduz, harrika egin eutsoen Jaunaren etxeko atarian. Izan be, Joax erregeak, Zakariasen aita Joiadak berari agertu eutson leialtasunaz ahazturik, haren semea hilarazo eban. Zakariasek, hilzorian egoala, esan eban: «Ikusi begi hau Jaunak eta eskatu begiz kontuak».

Hurrengo urtean, Siriako gudarosteak eraso egin eutson Joax erregeari. Judara eta Jerusalemera sarturik, herriko buruzagiak hil ebezan eta

harrapakin guztiak Damaskoko erregeari bialdu.
Siriako gudarosteak ez eban gizon askorik, baina Jaunak emon eutsen eskura judeguen gudaroste handiagoa, herriak Jauna asaben Jainkoa baztertu ebalako, hain zuzen. Holan, berak merezia emon eutsoen Joaxi. Siriarrek alde egin ebenean, larri zaurituta itzi eben erregea. Orduan, zerbitzariak kontra jagi jakozan eta, Joiada abadearen semearen heriotza mendekatzeko, bere ohean hil eben. Joaxi Daviden Urian lur emon eutsoen, baina ez erregeen hilobian.

Jaunak esana.

## Erantzun salmoa

*Sal* 89 [88], 4-5. 29-30. 31-32. 33-34 (R/. 29a)

R/. **Beti gordeko deutsat neure maitasuna.**

V/. Ituna egin dot neure aukeratuagaz,
David neure morroiari zin eginez:
Sendo ezarriko dot betiko zure errege-jatorria,
Gizaldiz gizaldi eraikiko zure errege-aulkia. R/.

V/. Beti gordeko deutsat neure maitasuna,

sendo eutsiko haregaz dodan itunari.
Betiko ezarriko dot haren errege-jatorria,
zerua baizen iraunkor egingo haren errege-aulkia. R/.

V/. Haren semeek nire legea baztertzen badabe
eta nire zuzenbideari jarraitzen ez,
nire arauak urratzen badabez
eta nire aginduak gordetzen ez. R/.

V/. Makilaz zigortuko dot hareen hobena,
zartailuz hareen errua.
Baina ez deutsat ukatuko Davidi neure maitasuna,
ez deutso huts egingo nire leialtasunak. R/.

## I. eta II. urteetan

Aleluia

*2 Ko* 8, 9

R/. **Aleluia.**

V/. Jesu Kristo, aberats izanik, behartsu egin zan,
bere behartsu izateaz zuek aberats egiteko. R/.

**EBANJELIOA**

*Ez kezkatu biharko egunaz.*

✠ Jesu Kristoren Ebanjelioa San Mateoren liburutik

*Mt 6,* 24-34

Aldi haretan, Jesusek esan eutsen ikasleei: «Ezin da inor nagusi biren morroi izan; izan be, bata gorroto izango dau eta bestea maiteko, edota batari leial izango jako eta bestea ez dau aintzat hartuko. Ezin zarie Jainkoaren eta diruaren morroi izan.

Horregaitik dinotsuet: Ez kezkatu bizitzeko zer jango edota gorputza zerez jantziko. Ez ete da bizia janaria baino gehiago, eta gorputza jantzia baino gehiago? Begira zeruko hegaztiei: ez dabe ereiten, ez uztarik batzen, ez garaian pilotzen; halan be, zeruko zuen Aitak janaritzen ditu. Ez ete dozue zuek hareek baino askoz gehiago balio? Asko arduratuta be, zuetariko nork luzatu leike apurtxu bat bizitza?

Eta jantziaz, zergaitik arduratu? Begira zelan hazten diran loreak zelaietan: ez dira lanean nekatzen, ez dabe iruten; baina, egia esan, Salomon bera be, bere ospe guztian, ez zan janzten horreetariko bat baizen apain. Beraz, gaur bedarlekuan dagoan eta

bihar surtan erreko dan bedarra Jainkoak holan janzten badau, zenbat gehiago zuek, sinismen gitxikook? Ez arduratu, bada, zer jango, zer edango, zer jantziko dozuen pentsatuz. Jentilak arduratu ohi dira horreez guztiez. Zeruko zuen Aitak badaki horreen guztien beharra dozuena. Bilatu lehenengo Jainkoaren erreinua eta beronen zuzentasuna, eta gainerako guztia gehigarri emongo deutsue Jainkoak.

Ez arduratu, bada, biharko egunaz, ze biharko egunak be ekarriko dau bere ardura. Nahiko ditu egun bakotxak bere buruhausteak».

Jaunak esana.